

# eine'ren Oleŕkiak

Aŕegi'taŕ Joseba'k Euzkeralduak

# HEINE'REN OLEŔKIAK

AŔEGI'TAŔ JOSEBA'K
EUZKERALDUAK



MCMXXVII

# HEÍNE'TAŔ ENDIKA



RAIN urte batzuk dirala, nere buruan ageŕtu zan asmoa ta nere biotzan soŕtu zan guraria gauŕ egiztu ta bete dira.

Asmo ta gurari ori oleŕki-idazti au argitaltzea zan.

Oleŕtizalea baldin ba-zara, irakuŕle maite ori, noz edo bein oleŕki edeŕen bat irakuŕi dozula edo irakuŕten zagozala-ta, zure biotza dardaraka asi ta zure espanetaraño iŕibaŕeak igoten igaŕi edo dozuz. Orixe da, Heine'taŕ Endika'ren oleŕki samuŕ-iŕitsuok lenengoz irakuŕi nituanean, nere biotzetik eta nere oldozmenetik soŕtu eragin ebena.

Origaitik ba, biotz-dardarak eragitekoak eta gogamenetik iŕi-samaŕtxuak soŕtuerazotakoak ereisten dodazalako, oleŕkari ospetsu oŕen oleŕki txoŕta bat, euzkeraz jantzita, zuri eskeintzea otu yat.

Gure euzkera gaizoan, zaŕa ba-da be, orain aŕte aulako, idaztia egin danik ez dakit. Lenengoa ba'da ta, ori dala ta, ausaŕditxoa ba'deritsozu nere arlo oni, asketsi irakuŕlea; lan au daukozan utsune ta akatzak alde batera itxita, auŕean dozun idaztia, naimen onenagaz egiña dalarik, ontzat aŕtu egizu; ikeŕtu egizuz astiro ta adeitsuz bere oŕiak, adipenez irakuŕi bere leŕoak. Heine'k egindako bide bigun-arantzatsuetan bein, saŕtu ezkero ondo zuazalako; ta ezyatzu damutuko.

Baŕa ¿nor eta nungoa da oleŕkari au?

Entzun, irakuŕlea:

## ITZAUŘEA

Heine'tař Endika doixtař olеřkari ospetsuenetarikoa da; Doitxeři ta gizaldiko oleřki-ortzean izař disditsuenetarikoa. Dusseldorf'en jayo zan 1797'ko Lotazila'ko 13'an. Ikasketxe Nagusi batzuetatik igaro ta gero, eřirik-eři ibili zan Doitxeři'tik, England'etik eta Italia'tik, Paris'era jo-uřte. Berak jasan zituan maite-samiñak guztiz atsekabetu eben bere biotza, ta bere oleřkietan argiro ořtu leike ori.

¡Bitxi bakan-ederak Heine'k egiñiko oleřkiak!

Gogamena ta sentzumena garbi-garbi banatzeko berak eukan almena andia zan. Alde batetik biotza estututen dau bere maitasunezko oñazak abesten dau zanean; baña beste aldetik oñaz-samin oyek bere biotza ozkatzen dabela-ta, iřibařeka asten da ta ezti-ki-maitero bere lepotik iñaka zořotzenak egiten dauz. Orixe da bere izakera berarizkoa, ta origaitik Doitxeřian baño pantzetařen ařtean daukoz bere geltzale sutsuenak. Jayotzez doixtařa ba-da, gogamenez pantzetařa dala esan leiteke. Ta onek pantzetařok, Heine adimen zolia ta gogamen sakon-argitsuduna dalarik, euren oleřkari maitea dan "Musset" ondoan egin dautsoe toki bat.

Luzaro egon zan gexorik gure oleřkaria; gexo zital baten erpe pean. Baña eriotza poli-poliki bereganatzen ikusi ařen, ezituan bere espanetatik iři-bařeak iges-egin, eta iñaka zořotz eta sotiltsuenak orduan egiten zituan.

Azkenez, 1856'ko Otsaila'ko 17'an il zan Paris'en oleřkari ospetsu ta gelgaři au.

Emen daukozuz ba, irakuřlea, Heine'tař Endika oleřkariaren zertzelada labuř batzuk. Aulako gizon berarizkoa ondo ezautzeko gutxi dirala esango edo dozu. Bai, zuzen zagoz, ez dira asko; baña zure jakingurea zořoztu dala-ta gizona obeto ezautzea nai ba-dozu: zuaz auřera, irauli egizu ondiño alboko beste ořI au, eta asi zaitez poliki-poliki bere oleřki onek gogoz irakuřten.

A'TAR J.



# I



ORAGAŔIA,
Txit gelgaŕia
Ageŕtu yatan
Oŕila;

Pipil guztiak
Oldaŕ andiaz
Etentzen eben
Azala.

Aldi atantxe
Nere biotz au
¡Ene maitea!
Eten zan;

Nere biotzan,
Uste izan gabe,
Maitetasuna
Soŕtu zan.

---

Aŕigaŕia,
Maitagaŕia
Izan zan, ziñez,
Loraiła;

Egazti orok,
Txio-txioka
Erakusteben
Alaia.

Neuk be, orduan,
Pozaz urduri,
Ageŕtu neban
Zoruna;

Jaulki neutsozan
Gaste edeŕari
Nere lei bizi
Samuŕak.



## II



ERE negaŕetik
Lora aŕigaŕiak
Naroro ta ugari
Maiz soŕtuten dira;
Ta nere intziriak
Eta uŕetxindoŕen
Abesti samuŕak
Bat egiten dira.

---

Maite nai ba'nozu
¡Ene neskatila!
Lora oŕek dira
Zuretzat izango;
Eta uŕetxindoŕen
Abesti zolia,
Zure leyo pean
Argi da entzungo.

## III


AŔOSA, zitori,
Uso ta euzkia,
Dana maite neban
Pozoŕez aspaldi.
Ta gauŕ zeu bakaŕik
Maite zaitut ¡ene
Zitori, laŕosa,
Uso, euzki ori!

## IV



URE begi baltz, edeŕ, sakona k
Ikusten dodazanean
Nere oñazak eta samiñak
Iges-dagie uŕutira;
Zure espan goŕi, me-bigunetan
Pa-egiten dodanean
Txit osasuntsu ¡kutuntxu ori!
Ta nasai auŕkituten naz.

---

Ta zure altzo samuŕan, baŕiz,
Burua atseden ezkero,
Zeruko pozak estaltzen dabe
Nere gogoa, maitero;
Baña ¡maite zaut! ba'diñostazu,
Ene laztana, orduan
Begietatik malko gaŕatzak
Ugari soŕtuko dira.

## V



MES nengoalarik
Ikusi neban atzo
Ain edeŕ, kutuna dan
Zure auŕpegi ori;
¡Bera dan gozoa ta
Gotzonen antzeduna!
Baña alan ta guztiz be
Bere zurbiltasunak
Nere biotz gaizo au
Samiñez dau estaltzen.

---

Zure espanak bakaŕik
Dozuz goŕi-goŕiak,
Baña eriotzaren
Mosuagaz, kutuna,
Goŕitasunak ere
Zurbildu eingo dira;
Eta zure begi uts,
Garbi-garbietatik
Soŕtuten dan argia
Itzaliko da, noski.

## VI



ITORI zuriaren
Kukuluan, gogoa
Ondatu gura neuke;
Zitoriak, orduan,
Nere maitearentzat
Abestukoban pozez.

---

Ta abestia, orduan,
Aspaldiko ordu samuŕ-
Zurgaŕi baten bere
Espan bigunak eman
Eusten mosua legez,
Dardaraz soŕtuko zan.

# VII


ERE abestien
Egal zurietan
Eroango zaitut
Uŕutira, neska;
*Ganges* ibaiaren
Ibaŕetaraño
Eroango zaitut
¡Ene maitalea!
Txoko gozatsu bat
Ezautzen dot beŕtan.

———

Ilargi zurbiĺak
Izpi baretsuaz
Estaltzen dabela,
Baratz usaintsu bat
Auŕkitzen da beŕtan
Lorez apainduta;
*Loto*'ren loreak
Euren aŕebatxu

kutunen begira
Dagozala, leiaz.

---

Iŕibaŕe ugari
Dagie liliak,
Eta baŕiketan
Ibilten dirala,
Gabeko izaŕari
Klisk-egiten dautse;
Ta laŕosak, baŕiz,
Itz usaintsuenak
Egiten dabiḷe
Batak bestiari.

---

Aditu gurarik
Orein bilduŕtiak
Uŕeratzen dira
Ijutika, alaiki;
Eta an, uŕutian,
Ibai dontsuaren
Ur amaigabeko
Zuzmuŕ zurgaŕia,
Poliki, garbiro
Entzuten da ere.

---

An, ¡ene kutuna!
Palmondoen pean
Etzungo gara gu,
Ta euren itzalak
Gure buruetan
Ixuriko dabez,
Goiko donokian
Gotzontxuak euŕez
Egiten dabezan
Ames gozatsuak.

## VIII




GUZKIAREN
Argi-izpi pean
*Loto*'ren lorak
Min dauko;
Bere burua
Makuŕtzen daula
Gabaren begira
Dago.

---

Maitalea dan
Gabeko izaŕak
Itxaŕtuten dau
Lorea,
Ta ageŕtzen dautso
Poli-poliki
Bere auŕpegi
Leun-leuna.

---

Ta dis-dis, sutsu
Zabaltzen dala,

Muturik dago
Lorea,
Begiak goruntz
Malkoz beterik
Maitasun gaŕak
Aŕtuta.



# IX



OTEŔTXAUN zabala
Altzoan eukirik,
*Rhin* ibai deunaren
Ur baretsuetan
Uria da agiri,
Ain ospetsua dan
*Kolonia* andi-deuna
Alai, jolastari.

---

Goteŕtxaun baŕuan
Irudi edeŕ bat
Auŕkitzen da, uŕezko
Naŕuz margoztuta;
Nere bizitzaren
Lekaro luzean
Aspaldi, gozaro,
Dis-dis ein ebana.

---

Ama Neskutza da,
Eta irudi aren

Gain-gaiñetik dabiltz
Lora ta gotzonak;
Bere begi, masail
Eta bere espanak
Nere maitearen
Lakoxeak dira.



## X

NOZU-maite ez
¡Ai! enozu-maite;
Bañan atsekabez
Ikusten dodan,
Ez da ori, ziñez.
Alan da guzti be,
Zure begi iĺunak
Ikusi ezkero,
Bakaldun bat baizen
Zoriontsua, neu.

---

Goŕotauko nozu,
Iguinduten nozu;
Zure abo guri,
Zuri-goŕi oŕek
Esan eustan argi.
Baña uŕendu eizuz
Zure espan goŕiak
Pa dagidazantzat;
Uŕendu eidazuz
Ta atseginduko naz.

# XI



MAKUME edeŕ
Maitale ori!
Zure altzoan
Neu-aŕtu;
Ta zure beso
Ta zangoakaz
Gorputz liraiñan
Estutu.

———

Sugetzaŕ lirain
Ta edeŕenak
¿Ez eban aŕtu
Gogoŕki,
*Laokonte*'rik
Zoruntsuena
Bere gorputzan
Lotuki?

# XII



Z zin-esan, maiteoi,
Pa-eidazu, bakařik,
Emakumien ziña
Ziñezten ez dot-eta,
Gozo-gozoak dira
Zure itzak baña, egin
Dautzudazan mosuak
Gozoagoak, noski.
Ta zure gorputz leuna
Altzoan daukodala,
Uskeriak neretzat
Ludiko itz guztiak.

---

¡Ai ene, zin-esaizu;
Zin bařiro, maitea!
Ondiño beste itz bat
Ta ziñestuko dautzut.
Ni bai zoriontsua
Zure altzoan jausten

Nazanean, kutunoi.
¡Ni bai zoriontsua!
Uste-izan gura dot,
Ene laztantxu, beti
Maite-izango nozula
Ta gero be ondiño.



# XIII



BESTI politenak
Nere maitalearen
Begi ernal-biziei
Pozik zuzendu neutsen.
Nere maitalearen
Abo gońiarentzat
Egiñak izan ziran
Irukoitz zintzoenak.
Nere maitalearen
Begi zolientzako
Neuŕtizki edeŕena
Neuŕtu neban, alairo.
Baña, nere maiteak
Biotza euki ezkero,
Amalau izneuŕtudun
Oleŕki txit edeŕ bat
Arin egingo neban
Bere biotzarentzat.

## XIV

UDI au dan kirtena;  
Ludi au dan itsua;  
Gero ta kirten  
Itsuagoa  
Ludi au.  
Zure izakera  
Ez dala ona  
Esan dau;  
¡Ene umetxoa,  
Gaiztoa zure  
Izakera...!

---

Ludi au dan kirtena;  
Ludi au dan itsua;  
Iñoiz etzaitu  
Ulertuko, bada  
Ez daki  
Zure laztanak  
Emoten daben  
Zoruna;  
Ez daki zure  
Mosuak diran  
Sutsuak.

# XV


TXASOKO altzo
Apaŕtsutik, *Venus*
Urteten danian
Disditsu ikusten da;
Baña bere eztegu-
Eguña dalako,
Nere maitalea,
Edeŕtasunaren
Leiñargi guztiaz
Ageŕtzen dalarik,
Disditsuagoa
Auŕkitzen da, noski.

---

Ai, ene biotza,
Ain jasankoŕ zaran
Nere biotz ori,
Nabaŕkeri zikin
Origaitik ez ba
Gorotorik euki;
Eroan egizu
Zure naigabea

## BITAŘTE

Eta, dana dala,
Kaskarin oŕeri
Ezeyozu bein be
Jaramonik egin.



# XVI



ETIKO galdua
Zaran maite ori,
Ludi-gauzakaitik
Enaz ařituko,
Ta nere biotz au
Apuřtzen dalarik
Ausita euki ařen
Ez dot ala-eingo.
Eztai-apaingaien
Goitasun guztiaz
Dirdira dagizu
Maite, baña entzun:
Zure ikatzařiko
Izpi bat ere ez da
Zure biotzaren
Gau baltzan jausiko.
Jakitun egon naz
Aspaldi, kutunoi;
Aldi gutxi dala

## BITAŔTE

Nere amesetan
Ikusi zinduban;
Ta zure gogoa
Betetzen daun gabak,
Baita ere, bere
Iluntasunean
Nařazka dabilzan
Suge itxelak ere
Ikusi nituan.
Eta ordu atan
Zure zorigaitza
Dan sakon-iluna
Ondo ikusi neban.



# XVII



ORIGAIZTODUNA
Zarala ba'dakit
Eta origaitik
Etzaitut goŕoto.
Maitaletxu ori:
Ludi ontan biok
Zorigaitza baizik
Ez dogu ikusiko.
Eriotz-eŕpeak
Biotza ausi aŕte
Ez dogu ez, bein be,
Zoruna loŕtuko.

---

Zure espan meietan
Isekak jolasten
Ondo ikusten dodaz;
Zure begietan
Disdis loskabea
Eta baita zure
Bulaŕa puztuten

## BITAŔTE

Daun aŕokeria
Ikusi leiteke;
Dana dala, entzun:
Neu baizen eŕuki-
Gaŕi zara zu.

---

Samin ezikuskoŕ
Batek eraiten dauz
Zure espan bigunak;
Malko bakaŕtiak
Itzaltzen dau zure
Begien argia;
Ta zauri ixil batek
Bulaŕ aŕotsua
Dautzu ozkatuten;
Beti, maitaletxu,
Eŕukigaŕiak
Izango gara gu.



# XVIII



DAŔ-nausien
Ots-gaŕaiziak
Durunda andia
. Dagie;
Txirolak eta
Aŕabiteak
Ots meiak eda-
Tzen dabez;
Gogoz diñardu
Eztegu-dantzan
Nere gogoko
Maiteak.

---

Eres-dagie
Txilibituak;
Aŕatzak, oŕu
Itxalgaŕi,
Ta bitaŕtean
Gotzontxu onak
Zotinka dagoz
Ta intziriz.

# XIX



URE biotz gozo,
Polit eta aizuna,
Ludi onetako
Gauz guztiak baizen
Polit eta aizuna
Dan zure biotzoi,
Nerea izan zala
Luzaroan, maite,
¿Aiztu dozu, ala?

---

Biotza sořkatu
Eusten samintasun
Ta maitasunatzaz
¿Aiztu zara gauŕ zu...?
Andiena zein zan
Ez dakit ondiño,
Baña andiegiak
Biok zirala, ¡ene
Ba'dakit bai, ondo!

## XX



NERE bańuko zauriak
Diran sakonak, ba'lekiz
Lora gaizoak, usaikiz
Nere zauriak, maitero,
Beteko zituan noski.

Nere eritasun ta ituna
Uŕetxindońak ba'lekiz,
Abesti alai, samuŕ bat
Nere oñazak leuntzeko
Abestuko leuke, pozik.

Ońtze goiko uŕezko izańak
Nere nekea ba'leki,
Neuganatuko litzake
Eta zeruko atsegin
Izpitsuak ere ekańi.

Nere nekea, ¡espen mingotz au!
Ez du iñok jakin gurarik;
¡Berak bakańik ezaututen dau,
Nere biotza zatitu daustan
Emakumeak bakańik!

# XXI



NERE lepotik
  Bańiketa asko
  Egin ebela
    Ba'dakit;
Ta nere kaltez
Esan ebena
Izan ei zala
  Geyegi;
Baña, gogoa
Egiz estutu
Eusten ziyoa,
Susmau bez.

---

Poli-poliki,
Bene-benetan
Erabilteben
  Burua;
Esaten eben
Antz begirakoŕ

Kaikuok era-
Kutzirik,
Gogo gaiztoa
Nintzala, eta
Zuk, bańiz, dana
Ziñetsi.

---

Gauza guztien
Txańena baña
Ez eben iñoiz
Susmatu;
Txańena, nere
Biotz-zokoan,
Arduraz neban
Ostendu.



## XXII



OREZ apaintzen ziran
Astigaŕ oŕlegiak,
Eta uŕetxindoŕaren
Txio-pio alaiak
Entzun genduazala,
Eguzkiak poz-pozik
Iribaŕe eiten eban
Gure auŕean, maite;
Eta zuk, ordu atan,
Besoetan loturik
Nere gorputza, leiaz
Asi zintzan mosuka,
Nere buru amesti,
Zori-zoriontsua
Zure bulaŕ sutsuan
Maitero laztandurik.

---

Euŕez-euŕez ostoak
Erortzen asi ziran,

## BITAŔTE

Eta bela baltzaren
Kaŕazka izugaŕia
Entzun genduala, ara
Eguzkiak jauŕtitzen
Begizkun okeŕenak
Gure begietara;
Orduan, oztasunez
Auŕez-auŕez jaŕirik
"¡Aguŕ!" esan genduan
Alkaŕi beiraturik;
Eta zuk, bereala,
Adeitsuz eta adikoŕ
Aguŕ eratsuena
Ein zenduan, polito.



# XXIII



Z dot ziñesten
Jaupariaren
Zerua;
Zure begi baltz
Oyek bakaŕik
Maitea,
Ziñesten dodaz:
Nitzat zerua
Diranak.

---

Ez dot ziñesten
Jaupariaren
Urtzia;
Zure biotza
Bakaŕ-bakaŕik
Kutuna
Ziñestuten dot.
Ta beste Urtzirik
Ez daukot.

---

## BITAŔTE

Gogo gaiztoa
Ta gaiztokiko
   Nekeak
Ere, ez dodaz
Ziñesten; bakaŕ-
   Bakaŕik
Zure biotza
Ta begi oyek
Ziñesten dodaz
   Sendoki.



## XXIV

EREGANAKO
Zintzotasuna
Luzaro euki zenduan;
Arduraz zaintzen
Zenduan nere
Burua, ordu aetan;
Nere naigabe
Ta lańietan
Ańturik zure laguntza.

---

Alditxu atan
Ĵan ta edaten
Ugari ekańi zeustan;
Eta dirua
Ordaiñez eman
Zeustan ordu iĺun aetan;
Ta ganez, janzki
Bigunak eta
Bizitz-igaro bide bat.

---

## BITAŘTE

¡Ene maitale
Eztitsu ori!
Su-eduřetik Urtziak
Jabongo al dau
Zure burua
Luzaro ludi onetan;
Ta ein daustazun
Ongiegiña
Sarituko dautzu Berak.



# XXV



ERE maitale eztitsu ori
Iłobi iłunan eizu lo,
Zure ondora juango naz lasteŕ
Gure gorputzak batzeko.

Sutsu ta leraz besaŕtzen zaitut
Mun-ereguak, zuretzat;
Ikara aŕtu nau, dardaka nago,
Nere bizitza amaitzen da.

Gaberdi dala iłak, jagita,
Moltzoz, dantzaka dijoaz...
Gu, aŕobian, besoak alkaŕ,
Iraungo gara, maitea.

Adaŕen otsaz iłak, jagita,
Epaił-azkenera doaz...
Atsegintsu ta besoak alkaŕ
Iraungo gara gu, gentzaz.

# XXVI



PAŘALDEKO
Mendi soil baten
Jagiten da izai
Bakař bat;
Lozořo dago
Eduřezko oyal
Lodi ta zuriz
Jantzita.

---

Sořkaldeřiko
Alde uřutian,
Aitz gori baten
Aldatzan
Itun, bakařik
Ta ixiltsu dagon
Palmondoatzaz
Ames da.

# XXVII



ŔEZKO izaŕ argi,
Garbi, polit oyek,
Uŕintsuan dagor
Nere maiteari
Aguŕ eyozue;
Biotza txit laŕi
Beti lez, dagola
Ta auŕpegia zurbil,
Zintzoa nazala
Esayozue be.

# XXVIII


ERE oñaze
Andienakaz
Dagidaz
Eufez abesti
Politak, txiki
Edeŕak;
Luma zoliak
Erabiĺirik
Ba'doaz
Abesti oyek
Maitalearuntz
Egazka.

---

Euren bidea
Auŕkitu-aŕen
¡Gaizoak!
Abesti oyek
Atzera datoz
Alaka;

## BITAŔTE

Alaka datoz
Eta ez dabe
    Esan gura
Bere biotzan
Eurak ikusi
    Dabena.



## XXIX



NE maitea
Jaube eztitsua,
Ezin dot aiztu
Beñola
Zure gorputza,
Zure gogoa
Nereak izan
Zirala.

---

Zure gorputza
Gaste-liraiña
Orain ere euki
Nai nuke,
Gogoa baña
Luřean itxi,
Nereagaz, ba,
Aski det.

---

## BITAŔTE

Zurekin batu
Zurean sańtu
Gura dau nere
    Gogo onek,
Gorputzez, gogoz
Zugaz, betiko
Alkańtuta, bat
    Eiteko.



# XXX



Al-egunetako
Soñekoz jantzita,
Oyan-basoetan
Jolastuten dira
Eŕiko jauntxoak;
Pozoŕezko oyuak
Jauŕtikitzen dabez
Ta ijutika dabilz
Auntz txikiak legez,
Gizadi emakoŕ-
Edeŕari, gogoz
Aguŕak egiten

---

Zorabiatuta
Begiratzen dabe
Lorez apainduten
Dan gizadiaren
Sendasun baŕia.
Ta euren belaŕi

Luze-zabalakaz
Erakaŕtzen dabez
Abaŕen gaiñetik
Ormatxoritxoak
Jauŕtitzen dabezan
Eres-abestiak.

---

Nere logelako
Leyoa orduan
ŕBereala izten dot
Eun iļun bategaz;
Olan loŕtuten dot
Egun guztietan,
Ain maite dodazan
Zomoŕo kutunak
Lasteŕ eratoŕi
Nere gelatxura,
Astiro ta ixilki
Neu ikeŕtutera.

---

Eta, aldi atan,
Iļundi iļunetik
Atzera itzulirik,
Maitetasunaren
Antzin-irudia
Auŕez ageŕtzen yat;
Bereala nere
Alboan jaŕtzen da,
Eta bere malko
Bero-beroakaz
Itunez betetzen
Dau nere biotza.

# XXXI



LDI aiztutako irudi zurbiḹak
Aŕobi iḹunetik oi-dira soŕtuten,
Irudi zurbiḹok ezaunak dirala
Nere gomutara ¡ene maite oŕek!
Geu-bizikera
Guztiz edeŕa,
Bizi-bizirik
Dakaŕe.

---

Nere gotiḹuna, ixilkoitasuna,
Nere itun sakonak ikusteuzenean
Auzoko notiñak, nigana izututa
Zuzentzen zituan euraen begiak.
Nere amesak
Txaiderik-txaide
Nerabiḹezan
Egunez.

---

Nere itzal iḹuna bakaŕik laguntzat
Izaten nebala, ixiltsu ta astiro

## BITAŔTE

Nere lagunakin alkaŕ bide-zeaŕ
Juaten giñian aŕats ta gauoro.
Txaidean baŕiz
Ixiltasuna,
Baretasuna
Bakaŕik.

---

Zubira elduta, durundea itxela
Egiteban nere oinkada urduriak.
Eta iłargi zuŕak, odei baltz aŕtetik
Klisk-egiten eusten eŕukiz beterik.
Ta gero bendo
Ta nausikiro,
Aguŕ itun bat
Bidali.

---

Zure etxe auŕean, zirkin egin barik
Gogoa estuta gelditutcn nintzan;
Ta nere begiak ¡ene maite ori
Zeu-leyoruntz, leiaz, zuzentzen nebazan.
Eta orduan,
¡Nere biotzak
Jarioteban
Odola!

---

¡Ba'dakit, bai, baña! Saŕi ta saŕitan
Zure leyo ondotik so-eiten zenduban;
Eta, iłargiak beren izpi leunaz
Aŕgiauta, zutik, abe bat ba'litz lez,
Toki beŕtantxe
Igikun barik,
Nere burua
Ikusi be.

# XXXII



UTIL on batek
Neska lirain bat
Maite dau;
Neskatxak baña
Beste gizon bat
Autu dau;
Eta au bаŕiz
Eskonduten da
Maite daun beste
Batekin.

---

Neska liraiñak,
Minduta, aŕtu dau
Senaŕtzat
Lenengoz bere
Bidean idoro
Dauna;
Mutilak jasan
Beaŕ azkenez

## BITAŔTE

Samin guztiak
Itunez.

---

Ipuin zaŕa da
Entzun dozuben
Ipuiña;
Antziñekoa,
Baña beti ipuin
Baŕia;
Ta gizon bati
Bein jasozkero
Apuŕtzen dautso
Biotza.



# XXXIII



ASAIL zurbiĺ-bustidun
Bakaldun altsu baten
Alabeagaz, ames
Egin neban bein baten;
Astigaŕ oŕlegien
Azpean jaŕtzen giñan
Besotik oratuta,
Maitero laztandurik.

———

"Ez dot ez maite zure
Aitaren bakaulkia,
Ta bere uŕezigoŕa
Enau zoratuten be;
Txingizko burestuna
Zetako euki, baŕiz?
Zeuri, lora edeŕoi!
Maite zaitut, bakaŕik."

———

—Alpeŕ-alpeŕik zabilz
Erantzun eustan berak;
Ilobian bizi naz;
Gabean izan ezik
Ezin naz zeu-ondora
Egunoro etoŕi;
Maite zaitudalako
Etoŕiko naz beti.



# XXXIV



LONTZI txiki
Arintsu baten
Nasai, bigunki
Jaṙita
Gengozan ene
Maitale ori,
Alkaṙegaz ta
Bakaṙik.
Bare-baretsu
Egoan gaba
Ta ur zabalaren
Gaiñean
Ixil-ixiltsu
Genbilzan, maite,
Aṙaunka eiten
Gebala.

---

Goiko iḷargiak
Argiatuta

# BITAŔTE

Maŕaztuten zan
  Oseŕtzan
Lañoz jantzita
Ugaŕtetxu bat,
Gogozko ugaŕte
  Geltsua.
Lañozko dantzak
Ugaŕtetxua
Inguratuten
  Ebela,
Atsegiñezko
Goi-eresiak
Argiro entzu-
  Ten ziran.

———

Gero ta bigun
Meiago ziran
Entzuten eres-
  Ots-leunak;
Ta zorokiro
Zuŕunbiltzen zan
Gau-ibilketa
  Itxaletan.
Ta bitaŕtean,
Enetxu ori,
Itxaso zabal
  Gaiñetik
Aŕaunka biok
Gelditu gabe,
Itxarokintza
  Galdurik.

## XXXV



AITE zindudan
Ta maite zaitut
Gauŕ ere!
Eta ludi au
Bein ondatuko
Ba'zan be,
Maitasunaren
Gaŕ betikoŕak
Disdiriz
Jagiko ziran
Ludiko ondakin
Aŕtetik.

# XXXVI



OIZALDI disditsu baten
¡Goizaldi alai-edeṙa!
Baratza zeaṙ niñoyan
Ibiltaldi bat eitera.
Txori ta lora guztiak
Itz-eiteben alkaṙegaz
Murmur bigun-zurgaṙiaz
Lorategia betetan.
Baña ni, nekez ta ixiltsu,
Auṙera, beti auṙera.

---

Euren begi lañotsuak
Txori ta lorak, nigana
Zuzendu egin zituen;
Baita, eṙukiz beterik,
Murmur bigun zurgaṙiaz
Lorategia beteben:
"Gaste zurbil, itun ori,
Ene gaste maitasuntsu:
Gure aizta maiteagaz
Ez zaitez, ai, asaṙetu."

# XXXVII



DAKO aŕats baten
Edestutako ipuiña,
Ipuin amesgaŕi ta
Zoragaŕizko bat lez,
Bere anditasunan
Goitasun itzaltsuan
Dirdira dagi nere
Maitetasun biziak.

---

"Lorategi batetik
¡Baratz zoragaŕia!
Mutu eta bakaŕik
Maitale bi joyazan;
Pioka ziñardubén
Uŕetxindoŕ guztiak
Ta iłargiak, izpiak
Bidalduten zituan."

---

BITAŔTE

"Ańantzezki bai'litzan
Loraltegi erdian
Gelditu zan bat-baten
Neskatil gurgańiak;
Eta gizon zindoa,
Gaste, on, leiatsua,
Beren auŕean arin
Belaunbiko jaŕi zan.
Oyanetik bat-batez
Eŕaldoia agiri zan
Ta neskeak, bilduŕez,
Uŕin iges-ein eban."

---

"Aiztokada itxel batek
Zatituta, gasteak
Luŕ jo eban, odolez
Luŕa busti ebala;
Ta eŕaldoia, aztunez,
Leizara biguŕtu zan."
Besterik orain ez da
¡Ene gizasemeok!
Nere burua saŕtu
Obitegian baño.
Azkenez atsedena
¡Iĺobian loŕtu dot!

## XXXVIII



AITASUNAGAZ
Batzuek eta
Gořotoagaz
Bestetzuk
Oñaztu dabe
Nere biotza
Eta auŕpegia
Zurbildu.

—

Maitasunagaz
Batzuek eta
Gořotoagaz
Bestetzuk
Zitaldu dabe
Ogia eta
Txola edenez
Betetu.

—

Baña biotza
Geiago mindu

## BITAŔTE

Ta itunez bete
  Daustana,
Iñoiz gofoto,
Iñoiz maite-izan
Enaun neskatil
    Batek da.



# XXXIX



URE mosuan
Uda beroa
Aurkitzen da;
Ta zure biotz
Bařuan negu
Otz-otza.

---

Baña ori lasteŕ
Aldatuko da
Maitea;
Zure mosuan
Eukiko dozu
Negua
Ta zure biotz
Bařuan uda
Goria.

## XL



OGO maite-maitaleak
Banatuten diranean,
Eskuak alkaŕ
Ito-intziriak,
Negaŕ-zotiñak
Dagie.

---

Ez genduan negaŕ-egin
Ezta intziriak jauŕti be;
Negaŕ-malkoak
Eta intziriak
Gero uŕten ziran,
Ai ene.

## XLI



EYA aŕtuteko mai inguruan
Jaŕita egozalarik,
Berealaxe maitasunatzaz
Itz-egiten ziran asi.
Maitasuna ta edeŕtasuna
Gizonentzako bat dira;
Emakumien aburuz, baña,
Biotzeko ikarea da.

---

Eta orduan auxe esan eban
Aolkari argaltxuak:
"Egi-egizko maitetasuna
Lera gabeko izan beaŕ."
Bere emazteak, ori entzuki,
Iñakaz baŕe-egin eban,
Adietaka ta abots motelaz
"¡Ene!" leunkiro esanda.

---

Ta jaupariak aboa guztiz
Zabal-zabalik ebala,

## BITAŔTE

Esaten asi zan apal-leunki:
"Osasuna ez galtzeko,
Maitetasuna ez da izan beaŕ
Lizunkeri geiegizko."
"¿Zegaitik ori? galdetu eban
Neskatiltxuak orduan.

---

Berealaxe, miñez beterik,
Emakume andikiak
Bere eritzia emon gurarik
Itz onek esan zituan:
"¡Lera andi bat da maitetasuna!"
Ta bitaŕtean, polito,
Andikiari *teya*-katilu
Bete bat eskeñi eutson.

---

Utsik egoan leku txiki bat
Mai aren albo batean,
Baña zu, ene maitetxu ori,
Zu, baña, beŕtan etziñan.
¡Tamal andia! ba garai atan
Zure eritzia, kutuna,
Maitasunatzaz dozun ustea
Jakingaŕia izango zan.



# XLII

ITALDUTA dagoz
Nere abestiak:
¿Izan oi leiteke
Beste ere batera?
Zuk bota zenduan
¡Maitagaři ořek!
Nere bizitzaren
Lorean, edena.

---

Zitalduta dagoz
Nere abestiak:
¿Izan oi leiteke
Beste era batera?
Biotzan daukodaz
Sugetzař zitalak,
Eta zeu ere bai
¡Ene maitalea!

# XLIII


ERE antziñeko
Maitasun-amesa
Atzera eldu da;
Loraila-gau bat zan:
Astigaŕen pean
Jezaŕita, zorun
Betikoŕa alkaŕi
Zin-esan genduan.

---

Eta ziñak, bata
Bestearen ostez,
Baŕe mosuakaz
Etozan, nastauta.
Ta gero ziñakaz
Ez aiztuteaŕen,
Eskuan, maitero,
Aginka ein zeustan.

---

¡O begi oztindun
Ene maite ori,

¡O agin zuridun
Maitaletxu ori!
Naikotxu neukan ba
Ziñakaz; bai, aski.
Eta aginkadea
Geiegi zan, noski.



# XLIV


I, amesetan negoalarik
Negaŕ ugari egin dot;
Il zintzazala, enetxu ori,
Ames egin neban atzo.
Itxaŕtu nintzan une beŕ-beŕtan
Ta nere masailetatik
Malko beroak, garbi-gaŕatzak
Jausi zirean, ugari.

---

Ai, amesetan negoalarik
Negaŕ ugari egin dot;
Aiztu ziñala nigaz, urduriz
Ames-egin neban atzo.
Itxaŕtu nintzan une beŕ-beŕtan
Ta nere malko lodiak
Tantaka jausten ikusi neuzan
Luŕa bustitzen ebela.

---

Ai, amesetan negoalarik
Negaŕ ugari egin dot;

## BITAŔTE

Maite nozula gogoz oraindik
Ames-egin neban atzo.
Itxaŕtu nintzan une beŕ-beŕtan
Ta nere malko-uyolea
Geitu-zabaltzen lasteŕ asi zan
Gero eta andiagoa.



# XLV



AU guztietan
Ikusten zaitut
Nere amesan
Bańeka;
Atsegin-sariz
Ińibańe eiten
Zeu zagoz eta
Orduan
Negań-intziriz
Besańtzen dodaz
Zure oin maita-
Gańiak.

---

Auńpegi itunez
Begizten nozu,
Auńpegi zurbil
Ilunez,
Zure burutxu
Zuri-gońia

## BITAŔTE

Dozula zirkin
    Egiten;
Ta euŕez zure
Begietatik
Malkoak dira
    Soŕtuten.

---

Zurizko lora
Txoŕta edeŕ bat
Emon daustazu
    Laztana;
Ta esan itz bat
Ixilpe, bañan...
Itxaŕtutean
    Ai, ez da
Lorapil ori
Iñun agiri
Eta itza ere
    Aiztu yat.



# XLVI



DAZKENEKO aize gogoŕak
Igituten dauz zugatzak;
Gaba busti da, ozkiro dagi,
Janzabal urdin bategaz
Estalduta arin, oyan zabala
Zeaŕkatuten dot zaldiz.

---

Zaldi gañean pozik noyala,
Auŕetik, ariñeketan,
Ikuskantz batzuk dirudiela,
Nere oldozmenak doaz;
Ta arin, alaitsu, maitalearen
Egotokira naroe.

---

Txakuŕak zaunka eta otseiñak
Irazekiakaz dageŕz;
Atxurdiñezko zurubi gora
Alairo noa, joranez,
Ta neu-aztalki zaratatsuak
Durunda andia dagie.

---

## BITAŔTE

Azpiko oyalez apaindutako
Gela disditsu-txukunan,
Egurats epel eta usaintsuan,
Nere maiteak ditxaro.
Maitalearen altzo bigunan
Jausten naz lasteŕ alairo.

—

Aize gogoŕak osto aŕtetik
Ta abaŕ aŕtean arteak,
Alkaŕ murmurots egiten dabilz:
"Zaldizko gaste zoŗuoi,
Burugabeko ames oŕegaz
¿Zeren biĺa ete zagoz?"



# XLVII



ERE ortze urdin
Argi-izpitsutik
Izaŕ zuri bat
Jausi da;
Jausten ikusi
Dodan izaŕa
Maitasunezko
Izaŕa da.

---

Osto zuri ta
Lora asko dira
Erortzen sagaŕ-
Tzetatik;
Ta aize ariñak
Erabiĺirik
Oŕtik biraka
Oi dabilz.

---

Osko-eŕtzetik
Uŕen ta aldentzen

Dala, *zisneak*
Ba'dabes;
Gero ta bigun
Meiago daula
Abestuten.
Poli-poliki
Urobian da
Ondatzen.

———

Itun ta ixiltsu
Dago ingurua
Ta aŕtega
Egaz dagie
Zoroki osto
Ta lorak.
Izaŕa itunez
Ayenatu da
Itzaletan;
Eta ixildu da
*Zisne*'ren
Abesti leuna.



# XLVIII


TZ eta ixiltsu
Egoan gaba;
Eta itun,
Naigabetuta,
Oyana-zeaŕ
Niñoyan.

---

Zugatzen loa
Astindu neban;
Ta eurak
Eŕukiz bete
Makuŕtu eben
Burua.

## XLIX



IDAŔTEAN dagoz
Luŕalduta euren
Burua il ebenak;
Bidaŕtean dagoz
Ta lora oztin bat,
Gogo-zorgaiztoko
Deritxoen lora,
Soŕtuten da beŕtan.

---

Intziri bat jauŕti
Neban bidaŕtean;
Itun ta muturik
Egoan gau otza;
Ta lora oztiña,
Iĺargi zurbiĺak
Argituta, astiro
Zibukatuten zan.

L


URE begien sua,
Argitasun gozoa,
Guztik zorabiatzen
Enaunetik, iḷundi
Estu, lodi-lodiak
Inguratuten nabe,
Ezer ez dakustala.

---

Maitasun-izaŕaren
Argitasun gozoa
Itzali zan neretzat;
Ta amil iḷuna dakust
Bakaŕik nere auŕean.
¡Gau amaigabe ori:
Aboa zabalduizu,
Nere burua iruntzi!

# AMAYA



NERE antziñeko abesti zitalak
Eta nere ames aztun ta gaiztuok
Luŕaldu daiguzan, ta oŕetarako
Ekaŕistazue zeŕaldo andi bat.
Saŕtu eingo dodaz ilontzi baŕuan
Ixilik euki nai dodazan gauza asko;
Eta zeŕaldo ori, *Heildelberg*-upela
Baño andiagoa beaŕ da izango.

---

Olezko balarta sendo-lodi batzuk
Ere ekaŕi begiez ainbat lasteŕen;
*Magunzia*-zubia baño luzagoak
Izan beaŕ dira balarta oŕiek.

---

Gañera ekaŕi ein dagiezala
Amabi eŕaldoi, ta izan daitezala
*Kolonia*-uriko goteŕtxaunan dagon
Deun Kistobal bañon indaŕtsuagoak.

---

Eurak eruan eta jauŕtiko dabe
Zeŕaldotzaŕ ori lasteŕ itxasora;
Itxasoko obia beaŕ dau nai ta ez
Zeŕaldotzaŕ oŕek, ain andia izan da.

---

¿Ez al dakizue zegaitik beaŕ dan
Ain andi ta aztuna izan zeŕaldo ori?
Nere oñazea ta maitetasuna
Nai dodazalako beŕtan, betiko itxi.



# ITZULIA

## I



RUDI samuŕak
Disdis egin eban,
Aspaldion, nere
Bizitza itxaltsuan:
Irudi samuŕoi
Ezeztu zala ta
Ilundiz nago gauŕ
Ingururatuta.

---

Neska-mutikoak
Ilundi aŕtean
Dagozala, bilduŕ
Izaten oi dira;
Bilduŕa kentzeko
Izaki meiatik,
Gogoŕ abestuten
Beti asten dira.

---

Oraintxe neu nago
¡Mutiko zoroa!

## ITZULIA

Iluntasunean
Gogoz abestuten;
Ta alairik ezbauko
Nere abestiak
¡Biotzeko gaitza
Beintzat dau gozatzen!



# II


Z dakit zer daun adirazoten
Sořkatuten naun itunak;
Liluratuta dot gogamena
Antzin-ipuin bat dala ta.

---

Ozkoř da aizea, gaba jausten da,
*Rhin* ibaia leunki doa;
Ta disdis dagi mendi-galuřak
Sařkalde argi jorian.

---

Neskatil edeř-gelgařiena
Goi-goian dago jařita;
Uře-uledia ořazten daula
Dis-dagi bere bitxiak.

---

Uřezko ořaziz ořaztuten dau
Ta bitařtean ba'dabes
Biotza austen daun ercsindasun
Bakanezko abesti bat.

---

Ontzikariren biotzerano
Oñaz itxel bat sartzen da;
Ta ugari aren ez dauz begiak
Mendi jagitik aldentzen.

---

Azkenez ontzi t'ontzikaria
Iruntzen dabez uiñeak;
Ori da, beren abestiagaz
*Lorelei*'k egin ebana.



# III



OZOŔEZ disdis egiten daula
Zoragaŕizko lorailak
Nere biotz au itunik dago,
Itun-itunik ¡gaizoa!
Ta aŕesi zaŕan zutunik nago
Astigaŕ baten jaŕita.

---

Aspi-aspitik, otsan ta ixilik
Uri-lubakia doa;
Mutiko batek aŕantzan dagi
Olontzi baten, txistuka.

---

Borda, baratzak, gizon ta idiak,
Zelaiak eta oyana
Beste aldean jagiten dira
Margozgaŕiro nastauta.

---

Neskame ederak, bedaŕ gaiñean
Edatzen dabez janzkiak;

Bolu-txiřingak ba'dauz botatzen
Ikatzařizko auts meiak,
Ta bere suzmur uřuti-leuna
Txit argiro dot entzuten.

---

Txabol txiki bat an jagiten da
Toře zař-urdin andian;
Beren alboan, gořiz jantzita,
Mutil bat dabil biraka.

---

Euzki izpitsuak argi daitsola
Sutizkiľua darabil;
Auřean dauko sutizkiľori,
Onuntz zuzendu dau orain...
¡Nere burua, mutil sendo ořek,
Il eingo al dau bat-batez!



# IV



USTI-ekaitsu dago gaur gaba
Ta izarik gabe ortzea.
Oyana-zear zugatz artetik
Zugatz otsenen azpitik,
Ardura ezaz, bidekatuta,
Ixil-ixilki ba'noa.

---

Jabolariren egotokian
Etxe bakarti ta zaran
Argi izpitsuak ikusten dira
Disdis egiten urinan.
Etxea baña etxat atsegin
Dagolako txit itunik.

---

Ezkibel ta ilun, zirkinik gabe,
Arizko irudi bai'litz lez
Aulki gaiñean, ixil-ixilik
Ule zuridun amona
Jarita dago, bere begiak
Ez dabela artzen argirik.

---

# ITZULIA

Uŕe-uledidun gaste sendoa,
Basotzañaren semea,
Sutizkiḷua orman eskegi
Ta urduriz bete an dabil;
Baŕe-algara loskabez dagi
Sumin itxelez beterik.

---

Irule ona negaŕez dago,
Negaŕez... neska liraiñak,
Ta altsoan daukon sapiña malkoz
Busti edo dau gaizoak,
Bere oiñetan etxe-txakuŕa
Uzkuŕtzen dala intzirika.



# V



NERE maitearen sendia, itsu-
[muztuz
Idoro nebala, ibilten joaki,
Beren aiztatxuak, beren aita ta
[amak
Danok befezautu ninduben alaiki.

---

Nere osasunatzaz eusten galdetu
Ta berealaxe, nere aufpegiko
Zurbildasunafen, enintzala aldatu
Len lez nagoala danok esan eusten.

---

Izeko, lengusu eta beste notin
Gogaikafien bafi aftu nituan;
Baita legunkiro zaunka eiten eban
Txakufarena be jakin neban arin.

---

Nere maiteatzaz ere itandu neutsen;
Maitea, gerotxu, ezkondu izan zala
Eta umealdian aufkituten zala
Eztiki, maitero esan eusten eurek.

---

## ITZULIA

Nere zorionak ta bañionak be
Eztiki, maitero emon ein neutsezan;
Ta aguŕ laztantsu bat, biotz ondokoa
Berai emoteko nik eskatu neban.

---

Aiztatxuk, bat-baten, oyuka esaban:
"Txakuŕtxu polit a, txakuŕ pitintxu a,
Azi ta anditu zan ta amoŕuz gexotu;
*Rhin* ibaira bota beaŕa izan gendun."

---

Maitearen antza dau neskatil onek
Iŕibaŕe_egiten daunean batez-be,
Ta atsekabez bete nabezan begiak
Begi berarexek daukoz txikitxuak.



# VI



ŔANTZALEAREN
Alaba ŕaiña:
Legoŕeratuizu
Zure olontzia.
Zatoz ta jezaŕi.
Zaitez nere alboan;
Zatoz eta itz daigun
Eskuz alkaŕtuta.

---

Ez bilduŕik izan
Ta burutxu ori
Nere biotzaren
Gain-gaiñean jaŕi.
¿Etzara goizoro
Ta kezkarik gabe
Itxaso uzutsura
Ala baŕuratzen?

---

Itxasoren antza
Biotzak ba'dauko;

# ITZULIA

Goibeiak, ekaitzak
Oi-dirade befton.
Eta bere ondo
Sakontsuetan be
Txingi bakan asko
Lo-egiten dabe.



## VII



L̄ARGI zurbil̄a
Sor̃tu ta agiri da
Itxasoko uiñeak
Argitzen dauzala.
Besoetan daukot
Nere maitalea
Ta alkar̃en biotzak
Dardaraka dagoz.

---

Ibar̃an, neskatil
On, eztitsuaren
Magalean dagit
Gozaro atseden.
"¿Zer entzuten dozu
Aize-or̃u itxelan?
¿Zegaitik zure esku
Zuria dikara?"

---

—"Ez da aize-otsa, ez
Aize-or̃u itxela;

Antziñan, joranez,
Itxaso zabalak
Iruntzi zituan
Ta neren aurkide
Diran lamiñaen
Abesti leuna da."



# VIII



ODEI aŕtean atseden dagi
Uŕezko il̄argi garbiak;
Laŕaran andi bat dirudil̄a
Atseden dagi goi-goian.
Ta argi egiten dautso, uŕezko
Żeŕenda zabal aŕtean
Itxaso uzutsu, goibeldunari,
Il̄argi edeŕ-garbiak.

---

Bakaŕik noa, bakaŕ-baŕaŕik
Itxas-goibeldun ondotik,
Uiña zuriak apuŕtzen diran
Itxaso-zabal eŕtzetik.
Itxas-uretan murmurots leunak
Entzuten dodaz, argiro;
Uiñen bitzatik soŕtutariko
Itz bigunen murmurotsak.

---

Luziegia da ¡ai ene! gaba
Luziegia, ta ixil̄ik

## ITZULIA

Ezin dau egon nere biotzak,
Ezin geiago muturik:
"¡Lamin oŕiek! uretatik at
Uŕten ta dantzan eisue;
Zoragaŕizko gauibilketa
Be abestu egizue.

---

Nere gorputza eta gogoa
Zubenak dira osoro;
Jaŕizue ba nere burua
Zuben altsoan, maitero;
Zuben abesti ta ereguak
Buru au ilgo al dabe;
Zuben mosuak nere biotza
Ere iruntsiko al dabe.



## IX



TXASOA lañoz estalduta dago;
Murmur zurgaŕia dagie uiñeak.
Ur garbietatik, astiro-astiro,
Irudi zuri bat leunki jagiten da.
¡Bera dan ederaŕ!
¿Nor da baña bera?

---

Uiñatik soŕtuta ondaŕtzara datoŕ
Ta nere ałboan łasteŕ jezaŕi da.
¡Irudi samuŕa, gozo ta laztana,
Mamu gelgaŕia! Zeu, ene, zeu zara
Itxasoko mamu,
Zorgin txit edeŕa.

---

Itxasoko altzo sakonetik uŕten
Ta ¿zegaitik ona etoŕi zara ba?
"Zure besoetan estututen nozu;
Zure besaŕkadeak diran gogoŕak,
Irudi kutuna
Mamu ain liraiña!"

---

—"Nere besoetan zaukot, gastetxua;
Suařtsu ta leraz laztanduten zaitut.
Ilunabař otza dagi gauř, maitea,
Ta zure ondoan gura dot sutatu.
¡Zeu zaran lerdena,
Zeu zaran eřutsu!"

—

Ilargiak gero ta zurbilagoa
Odei baltz ařtean dageř auřpegia;
"¡Begizkuna busti ta lañotsu dozu
Itxasoko mamu, sotiltsu, edeřa!"
¿Zer dala ta ori,
Maitagaři ona?

—

—"Ez da berez busti, ez da berez loitu.
Bustita daukodaz nere begi baltzak
Ura tantatxu bat lotu izan dalako
Itxas-uiñetatik uřten nazanean."
¡Baña ikusten zaitut
Begien auřean!

—

Itxastori, pio mingořak dagie;
Itxas-ařotuaořuaka asi da.
"¡Zure biotz ori igituta dago
Taupada itxelakaz gogoř eraginda!
¡Itxas-maitagaři,
Mamu sonatsua!"

—

—"Taupada itxelenak erabilten dabe,
Gař, zaletsu dago gauř nere biotza;
Etzara nigandik iñoiz aldenduko,
Betiko nerea zeu izango zara,
Gizakume ori,
¡Maite zaitut eta!"

## X



ŔIN-UŔINTSU, an saŕkaldeko
Argitasun txit jorian,
Itxas-zabala, pozez eta aŕo
Disdis egiten asi zan.
Aŕantzalien egotokian,
Etxe bakaŕti auŕean
Jaŕi ta mutu, bakaŕ-bakaŕik
Alkaŕ begira gengozan.

---

Goiruntz egian laño zuriak,
Gora-beraka uiñeak,
Oŕ ta emetik, lekune-zeaŕ,
Egaz ebilen kayoak;
Berealaxe zure betseiñak
Lekatu ziran ¡gaizoak!
Orduan zure begietatik
Malkoak jario ziran.

---

Malkuok jausten ikusi neuzan
Zure eskuetan tantaka,

## ITZULIA

Ta belaunbiko zure aurean
Jaririk ¡ene laztana!
Zure eskuetan eroritako
Malkuok edan nituan;
Orduan zure begietatik
Jario ziran malkoak.

---

Nere gorputza garai atatik
Aulduten edo asi zan.
Ilten da nere gogoa ere
Ordutik onuntz, gurariz.
Zorigabeko emakumeak,
Neskatil eder-liraiñak
Zitaldu ein dau nere biotza
¡Bere malko beroakaz!



# XI



XILTSU dago gaur gaba
Bare-baretsu txaideak;
Etxe onetan bizi zan
Nere kutun-maitalea;
Utsirik dago etxea,
Urun jun ziran jaubeak
Baña antziñeko lekuan
Datza orain ere etxea.

---

¡Ai ene! Gizon bat dago
Zutunik etxe ondoan;
Begiak busti ta sendo
Donokiruntz zuzenduta,
Ta bere eskuak biuri
Min zorotzak eraginda.
¡Ene! Ikarak artzen nau
Bere aurpegi ikusiaz;
Ilargiaren izpiak,
Izpi zurbil ta motelak

Argituta, neure irudi
Ber-beraxe darakust ta.

---

¡Nere lagun zurbil ori!
¿Zegaitik ba ¡nere irudi!
Sari-saritan ta aspaldi
Toki ori ber-bertantxe
Oñaztu nindun nekea,
Maitasunezko nekea
Oroimenera ekari?
¿Zegaitik, ene, zegaitik?



# XII



IZI-BIZIRIK nagola
Ondo bai ondo dakizu;
Lasaiki, ori dala ta,
¿Lo egin ete daikezu?
Antziñeko sukaŕak
Biotza igituten dauste
Ta bustaŕia apuŕtzeko
Geŕtu-geŕtu nago, maite.

---

Antziñeko abestiak
¿Ez ete dozu ezautzen?
Entzun: gauerdi batean
Izandako mutil batek
Bere maitearen bila
Juan zan gelditu gabe
Eta ildegira, naŕaska,
Maitea eroan ere.

---

Neskatiltxu edeŕ ori,
Polit eta gelgaŕia,

## ITZULIA

Bizi-bizirik nagola
Ziñez diñotzut gastea.
Bizi-bizirik neu nago
Emakume zinge ori.
Ta il guzti-guztiak baño
Indartsuagoa ¡noski!



## XIII




ERE gela txukunan lo dagi neskatiľak
Iľargi durduriak begiz joten dautsola.
Atean, dantzaketa, abes zoli-zoliak,
Zuzmur atzipekořak argi entzuten
[dira.

—

Atseden baretsua olan asalduten
Dautsonari ikusteko leyora uřeratu da.
Ta neskatil gaizoak, ařabitea joten
Azuřutsa bat dakus au abestuten dauna:

—

"—Aspaldion nerekin dantzaldi bat eitea
Itz-eman zeustan, maite, eta uts-egin zindun.
Ildegian dago gauř soñu ta dantzakea;
Zatoz eta alkařegaz dantzan egingo dogu."

—

Joran ta lei sutsuak neskatiľa ařtu dabe,
Eta azuřuts atzetik nařaska ba'dijoa.
Azuřuts izutsua, sendo, gelditu gabe,
Abes ta ařabitea gogořki joten daula.

—

Ařabitea joten eta ijutika doa;
Kařas-kařas dagie beren azuř gogořak,
Eta ikaragařiro zirkin-dagi kozkoa
Iłargiaren izpi legunak argituta.



# XIV



TLAS” txatxaŕa bai ni!
Gaudia jasan beaŕ,
Neketzazko gaudia.
Iñok eroan ezin
Dauna daroat eta
Biotza ausiko dala
Bulaŕean dirudi.

---

¡Biotz andiputz ori:
Zeuk nai izan zenduan!
Zorun edo zorigaitz
Amaigabea loŕtu
Gura zenduan ta oin,
Biotz aŕo-leluoi,
¡Eŕugaŕia bai zu!

## XV




ER nai ete dau nigaz
Malko bakaŕti oŕek?
Ikusmen odeituriko,
Nere begi-auŕean
Lotu dan malko bat da,
Antzin-negaŕ-malko bat.

---

Malko oŕek izandako
Lagun disditsu ugari
Ayenatu zirean.
Aize ta gaban ziran
Ayendu, nere samin
Ta alaiakaz batera.
Biotzan, iŕibaŕez,
Atsegin-oñaz arek
Ixuri izan eustezan
Izaŕ oztiñak ere
Ayenatu zirean
Odeiak ba'lira lez.

---

## ITZULIA

Ames arin bat legez
Nere maitasunak be
Ayenatu zirean.
¡Antziñeko malko ori;
Malko bakaŕti ori:
Ayendu zaitez zeu be!



## XVI



AIZKIÑARI deituta
Bereala eldu zan.
Gelgaŕiz nintzan lotu
Berai begiratzean.
Ez da itxusia gero,
Ez da eŕena bera;
Beren aro onenian
Dagon gizon begiko,
Gizon maitekoŕa da;
Adeitsu, oparikoŕ
Eta notin danentzat
Adiuŕ andikoa.
Gizaketari zuŕa
Da gero gaizkin ori,
Doibatz ta Lateŕia
Goraltzen dauna beti.
Zurbil samaŕtxu dago,
Baña enaz gelduten:
¿*Hegel* ta *Sanskritua*
Asi ez da ba ikasten?

## ITZULIA

Beren oleřkaria
Ospetsu-kutunena
*Fouqué* izan zan beti.
Eritxi gauzaetan
Ez dau usařtu gura
Utzi nai dauzalako
Ama *Hekate*'rentzat.
Nere zaletasuna
Lataritza ikasteko
Bendo goretsi eustan;
Oritzaz gastaroan
Ardura edo izan zan.
Nere laguntasuna
Gauza atsegiña zala
Berentzat esan eban,
Eta ori esanik
Burua makuřtuban.
Gerotxu, España'ko
Geznariren etxean
Gure buruak alkař
Ikusi genduzala
Edo galdetu eustan.
Batez, uřenagotik
Gaizkiñi beiraturik
Antzin-ezaun-ezaun bat
Zala neban ikusi.

# XVII



IZAKUMEA:
Txeŕen lepotik
Ez egin gero
Baŕerik.
Txit labuŕa da
Bizitzaldia,
Labuŕegia;
Ta ez da
Nekaldi uzu-
Amaigabe au
Eŕiren asmo
Utsalen bat.

---

Gizakumea:
Ordaindu gero
Eizuz zure zoŕ
Guztiak.
Txit luzea da
Bizitzaldia,
Luziegia;

## ITZULIA

Eta bein
Ta geiagotan
Jasan eingozu
Antziñan legez,
Sařitan.



## XVIII


Z izan gero iradu;
Ez zaitez asaŕetu,
Bereziki batzutan,
Abesti baŕietan
Ots-egiten ba'dabe
Nere antziñetako
Nerezko eres-otsak.

---

¡Itxaron, baña, itxaron!
Nere oñaz-anotsa
Ayenduko da agudo;
Eta udalen baŕi bat,
*Lieder*'zko udabaŕia,
Nere biotz sendotik
Soŕtuko da alaikiro.

## XIX



ORAKERI guztiak
Aŕtez uko-eiteko
Aldi ona eldu da;
¡Urteak eta urteak
Mozoŕo baten antzez
Zugaz antzeŕkizuna
Antzeztu nebanetik!

---

Era edeŕ-jagian
Egozan margoztuta
Apaingai gelgaŕiak;
Izpiak jauŕtikitzen
Zituan soñekoak,
Eta biozkada itun
Bakanenak nituan.

---

Ta orain tentelkeri
Oro oŕek utzi aŕen,
Antzin-aldi abetan
Antzeŕkiak antzeztu

Nituezanean lez,
Guztiz eŕugaŕia
Deitxot nere burua.

---

¡Jaunoi! nere eritzia
Jakingabe esan neban
Olgetan nengolarik;
Eta biotz baŕuan
Eriotza nebala,
Ezpatalari iluŕen
Eredua egin neban.



## XX



ERE biotza,
Biotz gaizo ori:
Ez geiago izan
Itunik!
Eroan eizu
Etoŕkizuna
Jasatasunez
Gaizoa,
Ba udabaŕiak
Emongo dautzu
Neguak ostu
Eutzuna.

---

Aberaskiak
Ugari dozuz
Gaur ere ¡nere
Biotzoi!
Eta oraindik
¡Gizagaizuoi,
Ludi au dan txit
Edeŕa!

## ITZULIA

Ta dana, ganez,
Atsegin yatzun
Dan-dana maite
Daikezu.



# XXI



ORA bat baizen
Gozo, edeŕa,
Garbi-garbia
Zeu zara.
Begizten zaitut
Ta gotiḷuna
Biotzerano
Saŕtzen yat.

---

Eskuak zure
Buru gaiñean
Jaŕtzea edo
Deritxot
Ain garbi, gozo,
Edeŕa Uŕtziri
Jabon zaizula
Aŕentzeko.

# XXII


UDIA ta bizitza
Osoak ez dirala,
Doixtaŕ irakaslari
Baten biḷa ba'noa;
Eraztuten ba'dakiz
Irakaslari oŕek
Ludiko gauz guztiak
Ta, berakaz, bidezko
Arauketa baŕi bat
Be bai, lasteŕ, egiten...
Bere txiŕikiña ta
Gau-txanoa jantzirik
Gaudiko ziŕitoak
Estalduko dauz, ta arin.

## XXIII



URE mosu sutsuak
Eraginda, kutuna,
Zaurituta ba'dagoz
Nere espan zimeltsuak;
Pa-egiyoezu ba
Osatu daitezantzat
Ta iłunabaŕerako
Amaitu ez ba'dozu
Ez ardurarik izan
Ez gara iradu eta.

Pa, baŕiro laztana,
Ez ardurarik izan;
Gau osoa daukozu
Auŕetik ¡maitalea
Maiterik maitiena!
Gau osoa, enetxu;
Eta gau guzti baten
¡Mosuak ta mosuak!
¡Ta izan leiteken zori-
Zoriontsua ere!

## XXIV



ERE besoetan,
Samuŕ-samuŕkiro,
Estu ta laztanak
Egin eustanean
Ortzeruntz joan zan
Egazka gogoa.
Gogoa egazten
Itxi neban, eta
Bere espanetako
Ezti gozatsua
Edaten, zororo,
Pozez iraun nintzan.

## XXV



UZUŔAK eta
Guzuŕak beti
Euŕez oi-dira
Munetan!
¡Baita pozoŕak
Eta pozoŕak
Izaten dira
Itxuretan!
¡Atzipetzea
Dan, ai, gozoa!
Baña norbera
Izatea
Atzipetua,
¡Ene! oraindik
Gozoagoa
Da, noski.

---

¡Zeu ostentzea
Txit alpeŕik da

## ITZULIA

Ene maitea,
    Alpeřik!
Bada zer yatzun
Guztiz atsegin,
Uzten dozuna
Ba'dakit.
Zuk ziñestuten
Dozuna nai dot
Neuk be ziñets:
    Osoro.
Eta ziñesten
Dozun guztia
Ziñeztu ere
Gura dot.



# XXVI



AUZA bikaiña
Ba'zan neretzat
Lasaikeria
Goitzia,

Baña, lorfuten
Enebanean,
Atsegiña be
Andia.

# XXVII


DIZKIDEAK:
Gutxi-gutxitan
Uleŕtu egin
Nozue;
Gutxiagotan
Ondiño baña
Ezautu egin
Zaitubet.
Idoian gure
Buruak alkaŕ
Doguzanean
Ikusi,
Egun oritan
Alkaŕ aditu
Dira, orduan
Bakaŕik.

## XXVIII



IKIRO guztiak
Alaka asi ziran
Abotsa goratu
Egin nebanean;
Ta espatu ziran
Irenok, esanik
Zaŕpala izan zala
Nere abestioi.

---

Eta danok, euren
Abots txakaŕ-meiak
Entzun-erazo ein
Ebezan poliki.
Ta abesti ariñak,
Leyaŕ ona legez
Ots-egiten eben
Garbiro, bigunki.

---

Maitetasuna ta
Maitetasun-naiak

Ta samuŕaldiak
Abesten zituen.
Ta ain edeŕtidezko
Atsegin aregaz,
Andreak negaŕez
Iŕotuten ziran.



## XXIX



IDE ezezaun guztiak
Estalduten dauz gabak;
Neketsu dot biotza
Ta aulduta gorpuzkiak.
¡Ilargi gozo-leunoi!
Oneski ixiltsu eran
Jausten da nere alboan
Zure argi zurbiloi.
¡Ilargi gozo-leunoi!
Zure izpitxuak dabe
Gabeko ikara itxela
Agudo erainduten.
Ayenatuten dira
Nere oñazak ere;
Eta nere begiak
Intzez dira estaltzen.

# XXX



GAU otz-otz bat da
Eriotzea;
Egun estu bat
Bizitza.
Aŕastuten da
Ta logura naz
Auldu naulako
Egunak.

---

Uŕetxindoŕak
Zugatz jagian
Dabes, nere etxe
Gaiñean.
Maitasunezko
Abesti bat da
Ta amesetan be
Entzuten da.

## XXXI



AR gelgariak
Biotza biztu
Oi ebenian,
Esaizu:
¿Abesti leuna
Zuzendu zeutson
Maitale edera
Nun dago?

---

Lilura garok
Itxali ziran,
Otz-itun dago
Biotza
Ta idazti au da
Maitasunaren
Autsak daukozan
Ontzia.

# BIL̄ABIDEA

Ingoskiak



## BITAŔTE

## BILABIDEA

## ITZULIA

